# ULERMENA TEST BIDEZ 5

**1. Arrastiri garaia da lasaiena, baina baita malenkoniatsuena ere, eta hobe lagunartean harrapatzen bazaitu.**

a)Garaia arras malenkoniatsua da; beraz, hobe lagunartean harrapatzen bazaitu.

b) Ilunabarra eguneko garairik goibelena izan ohi da eta lagunartean bazaude hobe.

c) Hobe duzu arrastirian bakarrik ez egotea, oso lasaia baita.

d) Arrastiria lasaia eta malenkoniatsua denez, hobe lagunarteari ihes egiten badiozu.

**2. Itsasoan ez gabiltza olatuen erasoak menderatzearren, baizik eta itsasoaren erronka saihestezina delako itsasertzean bizi garenontzat.**

a) Itsasoaren erronka ezin dugulako ekidin gabiltza itsasoan.

b) Olatuen erasoak menderatzea saihestezina delako gabiltza itsasoan.

c) Olatuen erasoak menderatu arren, itsasoaren erronka saihestezina delako gabiltza itsasoan.

d) Olatuen erasoak eta itsasoaren erronka menderatzearren gabiltza itsasoan.

**3. Hainbat lan egin duenak beti eraman izan du, itzala nola, alfer fama halako bat gainean.** Hau da:

a) Langile porrokotuaren irudi zaharrak ezin du itzali ospe handia eman izan dion alfer fama hori.

b) Hainbat lan egin zuela badirudi ere, alfer itzela izan zela diote beste batzuek.

c) Gaineko itzala erantziz gero, nabari da egiaz pertsona langilea eta alferra izan zitekeela.

d) Nagitzat ere jo izan dute, lan eskerga egin zuen arren.

**4. Ordu erdi igaroko zuten gutxienez ekin eta ekin eztabaidan, norberaren iritzia txapeldun jarri nahirik.** Bestela esanda:

a) Haiek ordu erdia emango zuten gutxienez, txapeldunaren izena erabakitzen.

b) Ordu erdia joango zitzaien eztabaidan, bietarik batek ere ez zuen atzera egiten eta.

c) Ordu erdiko ekitaldiaren ondoren, euren arteko eztabaida luzea izan zuten txapeldun zein izendatuko.

d) Biek ere txapeldun izan nahi eta ordu erdi luzeko eztabaida izan zuten gai jartzailearekin, nork bere gaia jarri nahirik.

**5. Herrixka malapartatu hartan, batek izan ezik, orok zekiten zein zen gaiztakeria hura burutu zuenaren izena.** Hau da:

a) Herrixka malapartatu hartan ez zegoen gaiztakeria hura burutu zuenaren izena ez zekienik.

b) Herrixka malapartatu hartan ez zegoen inor gaiztakeria hura burutu zuenaren izena ez zekienik.

c) Herrixka malapartatu hartan bat bakarra zen gaiztakeria hura burutu zuenaren izena ez zekiena.

d) Herrixka malapartatu hartan batek bazekien gaiztakeria hura burutu zuenaren izena.

**6. Urteak gorabehera, itxura fisikoa inoiz aldatzen ez zaien zorioneko pertsona horietakoa izan da gure Juanito.** Hots:

a) Juanitoren itxura fisikoan urteek eraginik ez izateak poztu egiten du.

b) Urteek itxura fisikoan gorabeherarik ez izan arren, zorionekoa izan da Juanito.

c) Juanito pertsona zoriontsua da, urteek ez baitute eraginik izan harengan.

d) Juanito zorteko pertsona da, urteen joanak ez baitu eraginik izan haren itxura fisikoan.

**7. Bere gauzak kontatzeko ez zuen inor. Hori izan zen zahartzaroa goibeldu ziona.** Beraz:

a) Bere gauzak nori kontatu eduki ez izanak goibeldu zion zahartzaroa.

b) Bere gauzak nori kontatzeko ez izateak goibeldu zion bere zahartzaroari.

c) Bere gauzak nori kontatu ez izana goibeldu zion zahartzaroa.

d) Bere gauzak nori kontatzerik ez izateak goibeldu zion zahartzaroa.

**8. Dendariak ez bezala, bezeroak haserre daudeerosteko ahalmena aurten asko urritu delako.** Alegia:

a) Gero eta gauza gutxiago eros dezakete bezeroek.

b) Gero eta gauza gehiago erosten dute bezeroek.

c) Dendariak gero eta haserreago daude.

d) Gero eta diru gutxiago dute bezero nahiz dendariek.

**9. Jaioterri-maitasuna bi eratan ager daiteke. Batzuek ez dute loria eta handitasuna baizik ikusten; beren buruari ederretsiz, harrotasunean igeri dabiltza.** Zer esan nahi du?

a) Batzuk igerian dabiltzala beren edertasun harroa aipatu nahian.

b) Batzuek harrotasuna eta handikeria besterik ez dutela ikusten jaioterrian.

c) Batzuek beren jaioterrian ez dutela ospea eta handitasuna besterik ikusten.

d) Jaioterri maiteak harrotzeko joera duenez, bertan jaiotakoak harroak direla.

**10. Aitzitik, jakintzaren muga estu-gogorrak zituen maite eta eginahalean saiatu zen, hautatu zuen arloan jakite soila hitz-jario alferretatik bereizten.** Zer esan nahi du?

a) Jakintzaren mugak errespetatzen zituela, zientzia eta hitz-jario errazak bereiziz.

b) Jakintzaren mugak estu eta gogorrak direnez, behartua sentitzen zela jakite soila eta hitzjario alferrak bereiztera.

c) Hitz-jario alferretan oinarritua dagoela zientzia eta muga estu-gogorrak dituela.

d) Jakite soila alde batera utziz, hautatu zuen arloa zientzia hitz-jarioduna izan zela.

**11. Titulua estreinatu berria duen irakaslearen borondate onarekin gehiago fidatzen gara gure guraso askoren hitz-jario ongi antolatuarekin baino.** Zer esan nahi du?

a) Borondate oneko irakaslea bazterturik, itsuitsuan gehiago fidatzen garela gurasoekin.

b) Gure guraso askoren etorri bikainarekin baino

gehiago fidatzen garela borondate oneko irakaslearekin.

c) Gurasoen hitz-jario ongi antolatua aipatzen duela irakasleak klasean.

d) Irakaslearekin ez ezik, gurasoekin ere fidatu behar dugula hizketan ikastean.

**12. Garbitasuna behar genuen, garbitasuna baino balio garaiagorik ez balego bezala.** Zer esan nahi du?

a) Garbitasuna, gauzarik inportanteena delako behar genuela.

b) Garbitasuna baino balio inportanteagoak badirela, garbitasuna behar bagenuen ere.

c) Oso ideia aberatsa delako, garbitasunera jo nahi genuela.

d) Garbitasuna dela baliorik handiena eta horretxegatik behar genuela.

ERANTZUNAK:

1B2A3D4B5C6D7A8A9C10A11B12B